# URTEAN ZEHARREKO XXXI. DOMEKA
## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Okertu egin zarie bidetik*
*eta asko eta asko jausiarazo dozue zeuen irakaspenaz.*

Malakiasen Profezia liburutik

*Ml* 1, 14b–2, 2b. 8-10

«Errege handia naz Ni –dino Jaun ahalguztidunak–, eta begirune deutsoe herriek nire izenari. Orain, abadeok, hona hemen zuentzako oharpena: Entzun nahi ez badozue eta nire izenari aintza emoteko ardurarik ez badozue –dino Jaun ahalguztidunak–, madarikazinoa bialduko dot zuen gainera.

Zuek, abadeok, okertu egin zarie bidetik eta asko eta asko jausiarazo dozue zeuen irakaspenaz. Hausi egin dozue Nik Lebigaz neban ituna –dino Jaun Ahalguztidunak–. Horregaitik, Nik be mespretxagarri eta kaxkar egingo zaituet herri guztiarentzat, nire bideak jarraitu ez dozuezalako eta erabagiak nor zein dan begiratuz hartu dozuezalako.

Ez ete dogu guztiok Aita bat bera? Ez

ete gaitu guztiok Jainko berak egin? Zertan gabiltz, bada, alkar engainatzen, Jainkoak gure gurasoekin egin eban ituna hausiz?»
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 131 [130], 1. 2. 3

R/. **Zaindu egizu nire bizia bakean zeuregan, Jauna.**

V/. Jauna, nire bihotza ez da handinahi,
ez nire begiak be gorazale;
ez nabil gauza handien atzetik,
gainditzen naben harrigarrien atzetik. R/.

V/. Ostera, isil eta bare dot barruan gogoa,
umetxua amaren altzoan lez,
umetxua lez dot barruan gogoa. R/.

V/. Itxaron, Israel, Jaunagan,
Oraindik betira arte! R/.

## II. IRAKURGAIA

*Prest ginan, Jainkoaren Barri Ona ez ezik,*
*baita geure bizia be zuei emoteko.*

San Paulo Apostoluak Tesalonikarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ts* 2, 7b-9. 13

Senideok: Maitasun samurrez jokatu genduan zuekin, bere umeak maitekiro

zaintzen dituan amak lez.

Hain bihotzeko zindueguzanez, prest ginan, Jainkoaren Barri Ona ez ezik, baita geure bizia be zuei emoteko. Hainbesteraino maite zindueguzan! Senideok, izan gogoan gure nekeak eta ahaleginak; gau eta egun egin genduan lan zuetako inorentzat karga ez izateagaitik, Jainkoaren Barri Ona iragarri geuntsuenean.

Horregaitik, eskerrak emoten deutsaguz eten barik Jainkoari; izan be, haren hitza iragarri geuntsuenean, onartu zenduen, ez giza hitz huts lez, Jainkoaren hitz lez baino; halan da, izan be, eta lanean dihardu zuengan, sinisten dozuenongan.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Mt* 23, 9b. 10b

R/. **Aleluia**.
V/. Bakarra da zuen Aita, zerukoa,
eta bakarra zuen gidaria, Kristo. R/.

## EBANJELIOA

*Esan, esaten dabe; baina egiten ez.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 23, 1-12

Aldi haretan, holantxe egin eutsen berba Jesusek jentetzari eta ikasleei: «Lege-maisuak eta fariseuak Moisesen maisu-aulkian jesarrita dagoz. Egizue, beraz, eta bete hareek esandako guztia; baina ez egin egiten dabena; ze, esan, esaten dabe, baina egiten ez. Karga astunak eta eroan ezinekoak lotzen ditue, eta besteei leporatzen; baina eurek atzamar batez be ez ditue mogitzen. Egiten daben guztia, jenteak ikusteagaitik egiten dabe; zinta zabalak erabiltzen ditue bekokian, eta borlatxu deigarriak mantu barrenean. Afarietan lehenengo jarlekuak, eta sinagogetan aurreaurreko aulkiak maite ditue, plazetan jenteak agur egitea eta guztiek “maisu” deitzea.

Zuek, ostera, ez itzi inori “maisu” deitzen, ze bakarra da zuen maisua, eta zuek guztiok alkarren senide zarie. Eta ez deitu lurrean inori “aita”, ze bakarra da zuen Aita, zerukoa. Eta ez itzi inori “gidari” deitzen be, ze bakarra da zuen gidaria, Kristo.

Zuetariko handiena izan bedi zuen

zerbitzari. Bere burua goratzen dauana beheratu egingo dau Jainkoak, eta bere burua beheratzen dauana goratu».

Jaunak esana.

_____________________________________________B

# URTEAN ZEHARREKO XXXI. DOMEKA

## B urtean

### I. IRAKURGAIA

*Entzun, Israel:*
*Maitatu egizu Jauna bihotz-bihotzez.*

Deuteronomioa liburutik

*Dt* 6, 2-6

Aldi haretan, honan berba egin eutson Moisesek Israel herriari: «Begirune izango deutsazu Jaunari, zeure Jainkoari, eta bai zuk eta bai zure ondorengoek nik emoten deutsudazan Jaunaren lege eta agindu guztiak beteko dozuez zeuen bizitza osoan, luzaro bizi zaitezen.

Entzun egizuz, beraz, Israel, eta ahalegindu betetzen, zoriontsu izan zaitezen eta biziro ugaritu, esnea eta eztia darion lurraldean, Jaunak, zuen asaben Jainkoak, agindu eutsuen lez.

Entzun, Israel: Jauna gure Jainkoa Jaun bakarra da. Maitatu egizu Jauna zeure Jainkoa bihotz-bihotzez, gogo osoz eta indar guztiz. Izan beti gogoan gaur esaten deutsudazan berba honeek».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 18 [17], 2-3b. 3c-4. 47 eta 51ab (R/. 2)

R/. **Maite zaitut, Jauna, neure indar!**

V/. Maite zaitut, Jauna, neure indar!
Jauna da nire hatx, nire gaztelu,
bera nire askatzaile. R/.

V/. Nire Jainko, nire harkaitz babesgarri,
nire babeski eta salbazino-indar,
nire gordeleku goragarri.
Dei egin neutsan Jaunari,
eta salbatu ninduan arerioakandik. R/.

V/. Gora Jauna! Bedeinkatua nire harkaitza!
Goratua nire Jainko salbatzailea,
garaipen handiak emon deutsoz erregeari,
maitasuna agertu deutso bere igurtzitakoari. R/.

## II. Irakurgaia

*Jesusek, beti irauten dauanez,*

*inoiz amaituko ez dan abadetza dau.*

Hebrearrei egindako epistolatik

*Heb* 7, 23-28

Senideok: Lehengo ituneko abadeak asko ziran, ezin eben-eta iraun, hil egiten ziralako. Jesusek, ostera, beti irauten dauanez, inoiz amaituko ez dan abadetza dau.

Jesusek betiko salbatu leikez beraren bidez Jainkoagana hurreratzen diranak, bizirik dago-eta hareen alde beti erregutzeko.

Benetan, Jesus lako abade nagusia behar genduan guk: santua, errubakoa eta kutsubakoa, pekatariakandik bereizia eta zeruak baino gorago jasoa. Honek ez dau, beste abadeek lez, lehenengo bere pekatuakaitik eta gero herriarenakaitik egunero opariak eskeini beharrik, behin betiko egin eban-eta hori, bere burua opari eskeini ebanean. Legeak, izan be, gizon makalak izentatzen ditu abade nagusi; legea baino geroagokoa dan Jainkoaren zinak, ostera, Semea izentatu dau abade nagusi, betieran bete-beteko dana.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Jn* 14, 23

R/. **Aleluia.**

V/. Ni maite nauanak gordeko dau nire hitza, dino Jaunak;
nire Aitak maite izango dau,
eta Aita eta biok harengana etorriko gara. R/.

## EBANJELIOA

*Maitatu egizu Jauna, zeure Jainkoa.*
*Maitatu lagun hurkoa.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 12, 28b-34

Aldi haretan, hurreratu zan Jesusengana lege-maisu bat eta itaundu eutson: «Zein da agindu guztietan nagusiena?»

Jesusek erantzun: «Hau da nagusiena: "Entzun, Israel: Jauna gure Jainkoa Jaun bakarra da. Maite egizu Jauna zeure Jainkoa bihotz-bihotzez, gogo osoz, adimen guztiz eta indar guztiz". Bigarrena, barriz, hau da: "Maitatu lagun hurkoa zeure burua lez". Ez da honeek baino agindu handiagorik».

Lege-maisuak esan eutson: «Ederto, Maisu; egia dinozu Jainkoa bakarra dala

eta ez dala besterik esatean, baita ha bihotz-bihotzez, adimen osoz eta indar guztiz maitatzea, eta lagun hurkoa nork bere burua bezala maitatzea, erre-opari eta sakrifizio guztiak baino hobea dala esatean be».

Eta Jesusek, zuhur erantzun ebala ikusirik, esan eutson: «Ez zagoz urrun Jainkoaren erreinutik».

Eta handik aurrera, ez zan inor itaunik egiten ausartzen.

Jaunak esana.

____________________________________C

## URTEAN ZEHARREKO XXXI. DOMEKA

### C urtean

### I. IRAKURGAIA

*Guztiez dozu errukia, izaki guztiak maite dozuz-eta.*

Jakituria liburutik

*Jkt* 11, 22–12, 2

Jauna, mundu osoa zure aurrean balantzan izpitxua da,
lurrean gelditzen dan goizeko iruntz-tanta.
Guztiez dozu errukia, dana egin zeinkelako,
eta gizakien pekatuei ez ikusiarena

egiten deutsezu,
bihotz-barritu daitezan.
Izaki guztiak maite dozuz,
eta ez dozu Zeuk egindako ezer gitxiesten;
zeozeri gorroto izan bazeuntso, ez zeunkean-eta egingo.

Zelan iraungo leuke zeozerk, Zuk gogoko ez bazendu?
Eta zelan jarraituko izaten, Zuk dei eginda sortu ez balitz?

Bihozbera zara Zu izaki guztiekin,
zureak dira-eta, bizidunak maite dozuzan Jaun horrenak,
eta zure espiritu hilezkorra guztiengan dago.
Horregaitik, apurka-apurka zuzenduarazoten dozuz errudunak,
euren pekatuak gogoratuarazoz zuzentzen dozuz,
txarretik urrundu daitezan eta Zugan, Jauna, sinistu dagien.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 145 [144], 1-2. 8-9. 10-11. 13c-14 (R/. 1)

R/. **Nire Jainko, nire errege,**
**bedeinkatuko dot zure izena betiere.**
V/. Goratuko zaitut, nire Jainko, nire errege,
bedeinkatuko dot zure izena betiere.
Egunero zaitut bedeinkatuko,
beti dot zure izena goratuko. R/.
V/. Errukiorra eta bihozbera da Jauna,
hasarregatxa eta onginahiz betea.
Ona da Jauna guztientzat,
errukiz betea bere sorkari guztientzat. R/.
V/. Goratu zagiezala, Jauna, zeure sorkari guztiek,
bedeinkatu zeure fededunek;
aitatu begie zure erregetza ospetsua,
berba egin begie zure ahalmenaz. R/.
V/. Fidagarria da Jauna bere hitz guztietan,
leiala bere egintza guztietan.
Jaunak eusten deutse jausteko zorian dagozanei,
eta jasotzen ditu lur joak. R/.

## II. Irakurgaia

*Jesus gure Jaunaren izena goratua izango da zuengan, eta zuek harengan.*

San Paulo Apostoluak Tesalonikarrei

egindako bigarren epistolatik

*2 Ts* 1, 11–2, 2

Senideok: Otoitzean gagoz beti zuen alde, gure Jainkoak bere deiaren gai egin zagiezan, eta bere ahalmenaz bere betera eroan dagian onerako dozuen gogoa eta zuen sinismenaren jarduera. Holan, Jesus gure Jaunaren izena goratua izango da zuengan, eta zuek harengan, gure Jainkoaren eta Jesu Kristo gure Jaunaren onginahiaren arabera.

Senideok, Jesu Kristo gure Jaunaren azkeneko etorreraz eta gu haregaz alkartuko garan uneaz, hau eskatzen deutsuegu: ez dagizuela arinegi burua galdu, ezta kezkatu be, Jaunaren eguna gainean dala dinoan goi-agerpen bat edo adierazpen bat nahiz guk egina ei dan gutun bat dala-eta.

Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *Jn* 3, 16

R/. **Aleluia.**

V/. Hain maite izan eban Jainkoak mundua, bere Seme bakarra emon eutson; harengan sinisten dauanak betiko bizia

dau. R/.

## EBANJELIOA

*Gizonaren Semea, galdua egoana bilatzera eta salbatzera etorri da.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 19, 1-10

Aldi haretan, Jesus Jerikon sartu eta herrian zehar joian. Bazan han Zakeo izeneko gizon bat, zergalari-buru zana, oso aberatsa. Jesus nor zan ikusi nahirik ebilen Zakeo, baina ezin eban jentetzagaitik, txikia zan-eta. Arineketan aurrera joan eta ikondo batera igon eban Jesus ikusteko, ze, handik igaro behar eban.

Jesusek, leku haretara heltzean, gora begiratu eta esan eutson: «Zakeo, jatsi behingoan, gaur zure etxean gelditu behar dot-eta». Behingoan jatsi zan eta pozik hartu eban etxean. Hori ikusirik, danak marmarka hasi ziran: «Pekatari baten etxera joan dok ostatuz».

Zakeok, ostera, zutunik jarrita, esan eutson Jaunari: «Jauna, neure ondasunen erdiak behartsuei emongo deutsedaz eta, inori ezer ostu badeutsat, lau halako bihurtuko

deutsat».

Jesusek esan eutson: «Gaur salbazinoa etorri da etxe honetara, ze, berau be Abrahamen ondorengoa da. Izan be, Gizonaren Semea galdurik egoana bilatzera eta salbatzera etorri da».

Jaunak esana.